# SAN MILLÁN



**Badirudi Emiliano izena dala** MILLAN **eta 473an jaio zala Berceo izeneko Errioxako herrian, edo zihurrago** Torrelapaja **izenekoan, eta** Susoko San Millan Monastegian **hil zala 574an. Beraz, bizitza luzea izan eban, e?: 101 urtegaz hil zan!** Bilibioko san Felices**en ikaslea zan; bien** erlikiak **jagoten dira Yusoko San Millan Monastegian.**

Artzain baten seme lez, 20 urtera arte izan zan bera ere artzain. Mendebaldean sarritan gertatzen zana egin eban Millanek ere: bizitza latzeko (aszeta) tankerako bihozbarritzera jo eban. Eta bakartadeko bizitza egiteko aukeratu eban **Sierra de la Demanda** deritzon ekialdeko maldea. Han, hatxean bertan zulatu eban beretzako bizilekua, eta hantxe bizi izan zan heriotzara arte.



Aszeta tankerako bizikerea **Felix** izeneko ermitau bategaz hasi eban. Hiru urte egingo ebazan Felixegaz, **Haro**tik hur-hurreko **Bilibio** izeneko inguruan. Handik **Cogollanos** ingurura joan zan, eta han 40 urtez bizi izan zan bakartadean, hainbat aldare eraikiz inguru haretan.

Tarazonako **Didimo Gotzaina**k, bere herri **Berceoko** abade izendatu eban, baina eleizgizon lagunek salatuko dabe eralgitzaile lez, behartsuekaz hain esku-zabal zalako. Horregaitik aldendu zan **Aidilloko** atxuloetatik. Gerorantza **Suso Monastegia** eraikiko zan inguru haretan. Laster baten **batu jakozan** beste eleizgizon batzuk ere: Aselo, Kotonato, Geroncio, Sofronio, e. a., eta baita andrazko bat ere, Potamia izenekoa, Narbonatik etorria. Gehiagorantza joango zan talde hau.

550.ean, Atanajildo zala errege, atxulo gehiago egin ebezan, solairu bitan eginak eta Millan bizi zan lekuan oxin batek alkartzen zitula. Han hil zan, eta emon eutsoen lur, 101 urte zitula. (***San Millango "zenotafio"ak dinonez***).

## Sarrera abestia

**BIHOTZ BATEZ ALKARTURIK**
Zugana gatoz, Jauna; Zugana gatoz, Jauna.
Emoiguzu zure argi grazi ta maitasuna:
entzun, arren, Jauna.

Altarean aurkitzen da kristau alaitasuna (2).
Emoiguzu zure argi grazi ta maitasuna:
entzun, arren, Jauna.

**Abadearen agurra**
† Aitaren eta Semearen eta Espiritu santuaren izenean.
—Amen.
† Jaungoikoak bere Semearen jarraitzaileak emoten deuskuz jarraibide eder. Haren grazia eta bakea zuekin.
—Eta zure espirituarekin.

**Damu-otoitza**
Senideok: Millan ermitauak-eta, munduko arinkeria, lasaikeria ta erosokeria bertan behera itzi, eta bizitza latzari ekin eutsoen, Maisuaren pozean. Autortu daigun gure lasaikeria:

—Jesus Jauna, Jainkoagandiko ondasunetara deitzen deuskuzuna: *Erruki, Jauna!*
—Jesus Jauna, ondasunetatik aske bizi izan zinana: *Kristo, erruki!*
—Jesus Jauna, ondasunak alkarbanatzera bultzatzen gaituzuna: *Erruki, Jauna!*
Erruki dakigula Jainko guztiz ahaltsua, eta gure pekatuak parkaturik eroan gaizala betiko bizitzara.
—Amen.

**Otoitza**
Oi Jainko, Zeuk deitu zeuntsan Millan ermitau santuari,
mundu honetan gauza guztien gainetik zeure erregetza bilatzera,
maitasun osoaren bideari jarraituz;

egizu, geuk ere, haren otoitzak lagundurik,
egin daigula aurrera maitasun-bidean espirituzko pozez.
Zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez,
Zurekin eta Espiritu Santuarekin batean
Jainko eta errege bizi da-eta gizaldi eta gizaldietan.

*Munduak baliobakotzat dauana aukeratu dau Jainkoak.*

**San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako lehenengo epistolatik** (1 Ko 1, 26-31)

Senideok: Begira zeintzuk zarien Jainkoak deituak; zuen artean ez dira asko munduak jakituntzat hartzen dituanetakoak, ezta ahaltsu nahiz handikietakoak be. Bestetara, munduak zorotzat dauana aukeratu dau Jainkoak, jakitunak lotsarazoteko, eta munduak makaltzat dauana, indartsuak lotsarazoteko; munduak baliobakotzat eta mespretxagarritzat dauana aukeratu dau Jainkoak, munduaren begietan ezer ez dana, zeozer dirala uste dabenak ezerezteko; holan, ez dau inork Jainkoaren aurrean harrotzerik.

Berari zor deutsazue izatea Kristo Jesusengan, hau egin dau-eta Jainkoak guretzat jakituria, honen bidez askatu gaitu, salbatu eta santu egin.

Holan betetzen da Liburu Santuak dinoana: «Harrotu nahi dauana, harrotu bedi Jaunagan».

Jaunak esana.

## ERANTZUN SALMOA

Sal 34 [33], 2-3. 4-5. 6-7. 8-9. 10-11 (R/. 2a; edota 9a)

**R/. Bedeinkatuko dot aldi oro Jauna.**

Bedeinkatuko dot aldi oro Jauna,
nire ahoan beti haren gorespena.
Harro nago Jaunagaz,
entzun begie apalek eta poztu beitez. R/.

Handietsi nigaz batera Jauna,
goratu dagigun alkarregaz haren izena.
Jaunagana jo neban, eta harek erantzun,
bildur guztietatik ninduan libratu. R/.

Begiratzen deutsoenak distiratsu egongo dira,
ez jake aurpegia lotsaz gorrituko.
Dohakabeak dei egin eban, eta Jaunak entzun,

eta estualdi guztietatik eban salbatu. R/.

Mt 11, 28

**R/. Aleluia!**

**V/.** Zatoze Neugana nekatu eta lanpetu guztiok,
eta Neuk arinduko zaituet, dino Jaunak. **(R/.)**

*Dituan guztiak saldu eta solo ha erosten dau.*

✠ **Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik** Mt 13, 44-46

Aldi haretan parabola hau esan eutson Jesusek jenteari: «Zeruetako erreinuagaz soloan ezkutatuta dagoan altxorrarekin bezala gertatzen da. Norbaitek, aurkiturik, barriro ezkutatzen dau eta, pozaren pozez joan, dituan guztiak saldu eta ha soloa erosi egiten dau.

Era berean, zeruetako erreinuagaz, harribitxi bila dabilen merkatariagaz lez gertatzen da. Balio handiko bat aurkitzen dauanean, joan, bere gauza guztiak saldu eta erosi egiten dau».

Jaunak esana.

## JAINKO HERRIAREN OTOITZA

† Gizabiderik ederrena aurkezten deuskun Jainko Aitari, geure askatasun ta beharrizanetik zuzendu deioguzan eskaririk gartsuenak, S. Millan ermitauaren egun honetan:

—Eleiza Amaren alde: behartsuenen eta baztertuen ondoan egoteko bere bokazinoa eskuzabaltasunaz eta askatasunaz bete ahal izan daian, eskatzen deutsugu, Jauna.

—Gerratean, gorrotopean eta ezbeharretan dagozan nazino, herrialde eta gizaki guztien alde: alkartasun-aldarri izan daitezan, eta ingurukoen eta urrunekoen bihotzak samurtu daiezan, eskatzen deutsugu, Jauna.

—Gure herrietan euren sinismena apaltasunean eta poztasunean bizi daben zahar, heldu, nagusi eta gazteen alde: lotsatu ez daitezan, adorea hartu baino, eta euren itxaropenera erakar daiezan euren ingurukoak, eskatzen deutsugu, Jauna.

—Hemen alkartu garan guztion alde: San Millan ermitauaren garraz landu daiguzan sinismeneko heldutasuna, gure arteko alkartasuna eta behartsuenganako bihozberatasuna,

eskatzen deutsugu, Jauna.

† Jainko Aita, gizakion poztasuna eta jauntasuna besterik nahi ez dozuna: onartu gure eskariok, eta egizu, San Millan ermitauaren antzera, zure hitzaren bideak urratu daiguzala. Jesukristo gure Jaunaren bitartez.
—*Amen.*

## EUKARISTIAREN LITURGIA

**Eskintza**

Bedeinkatua zu, Jauna, zeru-lurren Jainkoa, zeure esku zabaletik hartu ditugu orain ekarri deutsuguzan ogi-ardauok, lurraren indarrak eta gizakiaren lanak sortuak: honeexek egingo jakuz biziaren ogi eta betiko zorionaren edari.

—***Bedeinkatua zu, Jauna, orain eta beti***.

Senideok: egin daigun otoitz, guztiok batean, Eliza osoaren oparia Jaungoikoari eskeintzerakoan.

—***Jainkoa goresteko eta gizakiak salbatzeko***.

**Oparien gaineko otoitza**

Onartu, Jauna, guk zure zerbitzariok
Millan ermitau santuaren oroitzapenean
zure altarara ekarri doguzan eskeintzak;
egizu, lur honetako eragozpenak bazterturik,
Zeu bakarrik izan zaiguzala gure aberastasun.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

**Prefazioa**

V./ Jauna zuekin.....................................R./ Eta zure espirituarekin
V./ Gora bihotzak........................................R./ Jaunagan daukaguz
V./ Eskerrak Jaungoiko gure Jaunari............R./ Egoki da eta zuzen.

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta salbagarri,

nonahi eta beti guk Zuri eskerrak emotea,
Jauna, Aita guztiz santu,
Jainko ahalguztidun betiko horri.
Egoki da, bai, Zu gorestea,
guretzat dozun ardura miragarria agertzen dozulako,
zeruetako erreinuagaitik
euren burua Kristori eskeinita
bizi izan diran santuengan.

Holan, hasiera haretako santutasunera
erakartzen dozu barriro gizadia
eta aurretik gozatuazoten deutsazuz
hemen geroko bizi barrian izango dituan ondasunak.

Horregaitik, santu eta aingeru guztiekin
goresten zaitugu beti eta beti
[esaten] kantatzen dogula:

Santu, Santu, Santua,
diran guztien Jainko Jauna.
Zeru-lurrak beterik daukaz zure distirak.
Hosanna zeru-goienetan!
Bedeinkatua Jaunaren izenean datorrena.
Hosanna zeru-goienetan!

SANTU, SANTU, SANTUA...

## II. EUKARISTI OTOITZA

**Santu zara**, bai, Jauna,
eta santutasun guztiaren iturri;
egizuz, bada, santu ogi-ardao honeek,
zeure Espiritua isuriz,
Jesu Kristo gure Jaunaren Gorputz eta † Odol
egin daitezan guretzat.

**Berak**, saldu ebenean
eta bere gogoz kurutzera joiala,
ogia hartu eta, eskerrak emonez,
zatitu eban eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA JAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE GORPUTZA DA-ETA,
ZUENTZAT EMONGO DANA.

**Era berean**, afalondoan,
kaliza harturik,
barriz ere eskerrak emonez,
bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA EDAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE ODOLAREN KALIZA DA-ETA,
ITUN BARRI ETA BETIKOAREN ODOLA,
ZUENTZAT ETA ASKORENTZAT
PEKATUAK PARKATZEKO ISURIKO DANA.
EGIZUE HAU NEURE OROIGARRI.

**V/. Hau da sinismenaren misterioa**.

**R/.** Hil eta biztu zarala, Jauna,
Zu barriz etorri arte,
hau dogu, hau, barri ona!

**Horregaitik**, Jauna,
zure Semearen heriotza eta biztuera gogoratuz,
biziaren ogia eta salbamenaren kaliza
eskeintzen deutsuguz,
Zuri eskerrak emonez,
altaran zeure zerbitzari onartu gaituzulako.

**Eta apalik** eskatzen deutsugu,
Kristoren Gorputza eta Odola hartzen ditugunok
Espiritu Santuak bat egin gaizala.

**Izan gogoan**, Jauna,
mundu guztian zabaldurik dagoan zeure Eleizea;
eroaizu maitasun osora,
Frantzisko gure Aita Santuarekin,

Joseba gure Gotzainarekin,
~~(I. Gotzain Laguntzailearekin,)~~
eta eleiz-gizon (-emakume) guztiekin batean.

**Era berean**, izan gogoan, Jauna,
gaur mundu honetatik zeugana eroan dozuzan
**auzo honetako** zure zerbitzariak;
zure Semearekin bat egin diranok
biztueran ere berarekin bat izan daitezala.

**Baita izan** gogoan, Jauna,
bizteko itxaropenean joan diran gure senideak
eta hildako guztiak ere;
hartu egizuz zeure aurpegiaren argitan.

**Erruki zakiguz**, arren,
guk guztiok betiko bizitza jaritsi daigun,
Jainkoaren Ama Maria Birjina dohatsuarekin,
haren senar Jose santuarekin,
Apostolu eta martiri santuekin
Millan ermitau santuarekin,
eta, gizaldi guztietan,
zure adiskide izan diran santuekin;
eurekin batera goratu zaiguzan,
Jesu Kristo zure Semearen bitartez.

HONEN BITARTEZ, HONEKIN ETA HONENGAN
ZURI, AITA, JAUNGOIKO AHALGUZTIDUN HORRI
ESPIRITU SANTUAREKIN BATEAN
OSPE TA AINTZA GUZTIA
GIZALDI TA GIZALDI GUZTIETAN.
- Amen.

Salbatzaileak agindu ta irakatsiari jarraituz bildur barik esan dagigun.

**GURE AITA** zeruetan zarana
santu izan bedi zure izena,

etor bedi zure erreinua,
egin bedi zure nahia
zeruan bezela lurrean ere.
Emoiguzu gaur egun hontako ogia;
parkatu gure zorrak
geuk ere gure zordunei
parkatzen deutsegun ezkero;
ez eiguzu itzi tentazinoan jausten,
baina atara gagizuz gatxetik.

† Atara gagizuz, Jauna, gatx guztietatik,
emoiguzu bakea gure egunotan,
zure errukiari esker
pekatutik gabi bizi izan gaitezan
eta estualdietan sendo;
betiko zorionaren itxaropenean,
Jesukristo gure Salbatzailea
noiz etorriko dan zain gagozela.

*- Zeurea dozu erregetza;*
*zeureak ospe ta indarra orain eta beti.*

**BAKE ESKEINTZEA** (Abadeak)

† Jesukristo gure Jauna, zeuk esana da apostoluei 'bakea izten deutsuet, neure bakea emoten'; begira zure Elizearen sinismenari eta ez gure pekatuei, eta zeure gogoa danez, emoiozu elizeari bakea, emon batasuna, errege bizi zara-ta, gizaldi eta gizaldietan.
*— Amen.*

† Jaunaren bakea beti zuekin
*- Eta zure espirituarekin.*

† Emon deiogun bakea alkarri.

—Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: *Erruki, Jauna.*
—Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: *Erruki, Jauna.*
—Jaungoikoaren Bildotsa,

zeuk kentzen dozu munduko pekatua: *emoiguzu bakea*

## JAUNARTZEA

† Hona hemen Jainkoaren Bildotsa, hona munduko pekatua kentzen dauena: zoriontsuak honen mahaira deituak:
- JAUNA, NI EZ NAZ INOR ZU NIRE ETXEAN SARTZEKO,
BAINA ESAIZU HITZ BAT ETA OSATUKO NAZ.

**Abestia**

**Zabal bihotzok errukirako,**
**sendo bihotzok borrokarako.**
—Gizon-emakume barri, kondairaren eragile
gizatasun barriaren oinarri eta egile.
Gizon-emakume barri arriskuen onartzaile,
fede-bizitzan ausarta, zailtasunetan garaile.

—Gizon-emakume barri, esperantzaren gudari,
zuzenaren gose-egarri, egi bidean bidari.
Gizon-emakume barri, ez kate ta ez lokarri,
askatasunaren jabe eta askatasun-azkarri.

—Gizon-emakume barri, mugaz-gaindiko maitale,
alkar artean oretuz arraza eta lurralde.
Gizon-emakume barri, pobreen artean pobre,
hauekin alkarbanatuz etxeko ogi ta aterpe.

**Jaunartze ondorengoa**

Jainko ahalguztiduna, gure indarrak barritzen dituzu,
sakramentu honen bidez;
egizu, Millan ermitau santuak lez ikasi daigula
gauza guztien gainetik beti zure bila ibiltzen
eta mundu honetan gizon-emakume barrien irudia agertzen.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

## Azken onespena

† Jauna zuekin.

*- Eta zure espirituarekin*

† Bedeinka ta gorde zaizela Jainko ahalguztidunak:
Aitak eta Semeak † eta Espiritu santuak.
—*Amen*.

† Zoaze Jaunaren bakean.
—Eskerrak Jaungoikoari.

# **POBREEN EGUNA** /23

Pobrezi klase asko
dago inguruan
errez dog*u i*kusiko
bistaz aritzean.
(Erronka behin betiko
kristau alkartean
Jesusen irudiko
gu izatekotan).bis.

Pobreen arpegiak
kopeta tristea
egoera larriak
sortzen nahigabea.
(Gure afan guztiak
lanean jartzera
deitzen dausku premiak
aurten be atzera). bis.

Ezin emon lepoa
*ahul* behartsuari
horrek ere Jainkoa
dauka defentsari.
(Justiz*i e*ten bakoa
beti izan bedi
non gogo han zangoa
entzunez pobr*ea*ri). bis.

Pobrearen begiak
begitu ditugu
askoren gabeziak
gu salatzen gaitu.
(Apurturik hesiak
alkar besarkatu
bardintasun ametsak
guk egi bihurtu). bis.


Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta sal-ba-ga-rri, no-na-hi eta


beti guk Zuri eskerrak e-mo-te-a, Jauna, Aita guz-tiz san-tu,


Jainko ahalguzti - dun be-ti - ko ho-rri. Egoki da, bai, Zu


go-res-te-a, gu-re-tzat dozun ardura miragarria agertzen do-zu–


la-ko, zeruetako erreinuagaitik euren burua Kristori es-kei-ni-ta


bizi i-zan di-ran san-tu-en-gan. Ho-lan, hasiera haretako santuta-


su-ne-ra erakartzen dozu barriro gi-za-di-a eta aurretik goza-


tuazoten deutsazuz he-men geroko bizi barrian izango di-tu-an on-


da-su-nak. Horregai-tik, santu eta aingeru guz-ti-e-kin goresten


zai-tu-gu beti eta beti kan-ta-tzen do-gu-la: